# URTEAN ZEHARREKO XIII. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jainkoaren gizon hori santua da;*
*gurean gelditu dadila.*

Erregeak bigarren liburutik

*2 Erg* 4, 8-11. 14-16a

Behin baten, Eliseo Xunemdik igaro zan. Bazan han andra handiki bat, eta bere etxera eroan eban Eliseo bazkaltzera. Harrezkero, handik igarotzen zan bakotxean, bertan gelditzen zan Eliseo bazkaltzen. Behin baten, andreak esan eutson senarrari: «Begira, badakit gure etxera etortzen dan hori Jainkoaren gizon santua dana. Egin deiogun goian gela txiki bat; ohea, mahaia, aulkia eta argiontzia ipiniko deutsaguz, gurera etortzean bertan gelditu dadin».

Etorri zan behin Eliseo eta, goiko gelara sarturik, bertan etzun zan. Eliseok Gehazi bere morroiari esan eutson: «Zer egin geinke andra honen alde?» Gehazik erantzun eutson: «Begira, ez dau umerik eta senarra zahartuta dago». Eliseok esan eutson

morroiari: «Dei egiozu».
Dei egin eutson eta andrea atean agertu zan. Eliseok esan eutson: «Datorren urtean, sasoi honetan, semea izango dozu besoetan».
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 89 [88], 2-3. 16-17. 18-19 (R/. 2a)

R/. **Jauna, zure maitasuna abestuko dot betiren beti.**

V/. Jauna, zure maitasun-egintzak kantatuko ditut beti,
zure leialtasuna iragarriko gizaldiz gizaldi.
Bai, autortzen dot:
Betiko eraikita dago zeruan zure maitasuna,
sendo ezarria zure leialtasuna. R/.

V/. Zorionekoa, Zu pozik goratzen dakian herria!
Zure argitan ibiliko da, Jauna;
zure izenean da egunero alaitzen,
zure salbazino-egintzaz harrotzen. R/.

V/. Zeu zara-eta haren ospe eta indar;
zure onginahiak egiten gaitu garaile.
Jauna da, izan be, gure babeskia,
Israelgo Santua gure erregea. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Bateoaren bitartez heriotzan hobiratuak izan gara haregaz,*
*guk be bizi barria bizi dagigun.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 6, 3-4. 8-11

Senideok: Bateoaz Kristo Jesusegaz bat egin dogunok, haren heriotzagaz egin dogu bat. Bateoan hobiratuak izan gara haregaz batera heriotzan, Aitaren aintzaz Kristo hilen artetik biztu zan lez, geuk be bizi barria bizi dagigun.

Beraz, Kristogaz hil bagara, sinisten dogu, bizi be haregaz biziko garala. Badakigu Kristo, hilen artetik biztu zanetik, ez dala barriro hilko; heriotzak ez dau gehiago aginterik harengan; haren hiltzea pekatuarentzat behin betiko hiltzea izan zan, eta haren bizitzea Jainkoarentzat bizitzea da. Bardin zuek be; hartu kontuan pekatuarentzat hilda zagozela eta Jainkoarentzat bizirik, Kristo Jesusengan.

Jaunak esana.

Aleluia

*1 P* 2, 9

R/. **Aleluia.**
V/. Zuek jatorri aukeratua zarie,
errege eta abade, nazino santua;
iragarri egizuez ilunpetik bere argi zoragarrira
dei egin deutsuen Jainkoaren egintza bikainak. R/.

## EBANJELIOA

*Bere kurutzea hartzen ez dauana ez da Niretzat gai.*
*Zuek onartzen zaituenak Neu onartzen nau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 10, 37-42

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen apostoluei: «Aita nahiz ama Ni baino maiteago dauana ez da Niretzat gai; semea nahiz alaba Ni baino maiteago dauana ez da Niretzat gai. Bere gurutzea hartu eta jarraitzen ez deustana ez da Niretzat gai. Bere biziaren jaube izan guran dabilenak galdu egingo dau; bere bizia Nigaitik galtzen dauanak, ostera, eskuratu egingo dau. Zuek onartzen zaitueenak Neu onartzen nau, eta Ni onartzen nauanak bialdu nauena onartzen dau.

Profeta bat, profeta dalako, onartzen

dauanak profetari zor jakon saria izango dau, eta pertsona zuzen bat, arteza dalako, onartzen dauanak pertsona zuzenari zor jakon saria izango dau; eta txiki honeetako bati, nire ikasle dalako, baso bete ur fresko besterik ez bada be emoten deutsana, benetan dinotsuet ez dala saririk barik geldituko».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XIII. DOMEKA

## B urtean

## I. IRAKURGAIA

*Deabruaren inbidiaz sartu zan heriotza munduan.*

Jakituria liburutik

*Jkt* 1, 13-15; 2, 23-24

Ez eban Jainkoak egin heriotza,
ez dau atsegin bizidunak galtzea;
izan be, irauteko egin ebazan harek gauza guztiak;
munduko izakiak osasungarri dira,
ez dabe euren barruan pozoi hilgarririk,
eta Heriotzak ez dau lurrean aginterik,
hilezkorra da-eta zuzentasuna.

Hilezkor izateko egin eban Jainkoak gizakia,
bere izatearen irudi egin eban;
baina deabruaren inbidiaz sartu zan heriotza munduan
eta harenak diranek jasango dabe.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 30 [29], 2 eta 4. 5-6. 11-12a eta 13b (R/. ik. 2a)

R/. **Goratuko zaitut, Jauna, onik atara nozulako.**

V/. Goratzen zaitut, Jauna, onik atara nozulako,
arerioei nire lepotik pozten itzi ez deutsezulako.
Jauna, Herio-lezatik atara nozu,
zulora jatsi zorian nengoala bizibarritu. R/.

V/. Kanta Jaunari, haren fededunok,
goratu egizue, haren santutasuna gogoratuz.
Une baterako da haren hasarrea,
bizi guztirako haren onginahia.
Arratsean negarra da gurean,
poz-oihua goizean. R/.

V/. «Entzun, Jauna, eta erruki nitaz,

izan zakidaz laguntzaile, Jauna».
Negarra dantza bihurtu deustazu,
Jauna, ene Jainkoa, eskerrak emongo deutsudaz beti. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Zuen ugaritasunak senide behartsuen urritasuna konponduko dau.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 8, 7. 9. 13-15

Senideok: Gauza guztietan aberats zarie: sinismenean, berba egiteko gaitasunean, jakintzan, danerako arduran eta guganako maitasunean; izan zaiteze aberats eskuzabaltasunean be. Ezaguna dozue Jesu Kristo gure Jaunaren eskuzabaltasuna: aberats izanik, behartsu egin zan zuekaitik, bere behartsu izateaz zuek aberats egiteko. Arazoa ez da besteak nasai egoteko zuek larri izatea, guztien bardintasuna bilatzea baino.

Une honetan, zuen ugaritasunak hareen urritasuna konponduko dau, eta egunen baten hareen ugaritasunak zuen urritasuna konponduko dau; honan, parekotasuna izango da nagusi, Liburu Santuak dinoan lez: «Asko batu

ebanak ez eukan larregi, ezta gitxi batu ebanak be gitxiegi».
Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *2 Tm* 1, 10

R/. **Aleluia.**
V/. Kristo Jesus gure salbatzaileak heriotza ezereztu dau
eta bizia argitu Barri Onaren bidez. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Neskatila, zeuri dinotsut, jagi.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 5, 21-43

Aldi haretan, Jesus itsasoaz bestaldera bihurtu zanean, jente-talde handia batu jakon. Horretan, itsaso ondoan egoala, sinagogako buruzagietako bat etorri zan, Jairo eritxona; Jesus ikustean, honen oinetan ahuspezturik, arren eta arren eskatzen eutson: «Hilzorian dot alabatxua; zatoz haren gainean eskuak ezartzera, osatu dadin eta bizi». Jesus harekin abiatu zan.

Jente asko joiakon atzetik, estutuz.

Bazan han emakume bat, hamabi urte haretan odoljarioa ebana. Hamaikatxu osagileren eskuetan gorriak ikusia zan, eta bere ondasun guztiak be horrexetan emonak zituan; baina osatu beharrean, gero eta okerrago joian. Jesusen barri entzunda, jente artean atzetik joan eta jantzia ikutu eutson, ze hauxe inoan bere artean: «Jantzia behinik behin ikutzen badeutsat, osatuko naz». Une berean gelditu jakon odoljarioa, eta gatxa osatuta eukala igarri eban bere gorputzean.

Behingoan ohartu zan Jesus halako indar batek urten eutsola barrutik eta, jente artera bihurturik, itaundu eban: «Nork ikutu deust jantzia?» Ikasleek erantzun eutsoen: «Hainbeste jentek estutzen zaituala ikusi, eta nork ikutu zaituan itauntzen dozu?» Baina Jesus ingurura begira ebilen, nork egin ete eutson hori.

Orduan, emakumeak, bildurrez dar-dar –ze ondo ekian zer gertatu jakon–, oinetara jausi eta egia osoa autortu eutson. Baina Jesusek esan eutson: «Alaba, zeure sinismenak osatu zaitu; zoaz bakean, eta osatua bekizu gatxa».

Oraindik berbetan ziharduala, sinagogako buruzagiaren etxetik etorri ziran, esanez: «Hil jatzu alaba. Zertarako emon neke gehiago Maisuari?» Baina Jesusek, berba horreek entzunik, sinagogako buruzagiari esan eutson: «Ez bildurrik izan; zuk sinistu egizu!»

Ez eutson inori be berarekin joaten itzi, Pedrori, Santiagori eta honen anaia Joani izan ezik.

Sinagogako buruzagiaren etxera heltzean, ikusi eban Jesusek hango astrapala, jentea negarrez eta zarataka. Sartu eta esan eutsen: «Zer dala-eta horrenbeste astrapala eta negar? Neskatila ez dago hilda, lo dago». Hareek barre egiten eutsoen.

Baina Jesusek danak bialdu zituan kanpora eta, neskatilaren aita-amak eta beragaz zituanak hartuta, neska egoan tokira sartu zan. Neskari eskutik heldu eta esan eutson: «Talitha, kum» (hau da: «Neskatila, zeuri dinotsut, jagi»). Behingoan zutundu eta ibiltzen hasi zan, hamabi urte bazituan-eta. Jente guztia harri eta zur gelditu zan. Jesusek zorrotz agindu eutsen inork be ez egiala

jakin. Eta neskatilari jaten emoteko esan eutsen.

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Neskatila, zeuri dinotsut, jagi.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 5, 21-24. 35b-43

Aldi haretan, Jesus itsasoaz bestaldera bihurtu zanean, jente-talde handia batu jakon. Horretan, itsaso ondoan egoala, sinagogako buruzagietako bat etorri zan, Jairo eritxona; Jesus ikustean, honen oinetan ahuspezturik, arren eta arren eskatzen eutson: «Hilzorian dot alabatxua; zatoz haren gainean eskuak ezartzera, osatu dadin eta bizi». Jesus harekin abiatu zan.

Jente asko joiakon atzetik, estutuz. Sinagogako buruzagiaren etxetik etorri ziran, esanez: «Hil jatzu alaba. Zertarako emon neke gehiago Maisuari?» Baina Jesusek, berba horreek entzunik, sinagogako

buruzagiari esan eutson: «Ez bildurrik izan; zuk sinistu egizu!»

Ez eutson inori be berarekin joaten itzi, Pedrori, Santiagori eta honen anaia Joani izan ezik. Sinagogako buruzagiaren etxera heltzean, ikusi eban Jesusek hango astrapala, jentea negarrez eta zarataka. Sartu eta esan eutsen: «Zer dala-eta horrenbeste astrapala eta negar? Neskatila ez dago hilda, lo dago».

Hareek barre egiten eutsoen. Baina Jesusek danak bialdu zituan kanpora eta, neskatilaren aita-amak eta beragaz zituanak hartuta, neska egoan tokira sartu zan. Neskari eskutik heldu eta esan eutson: «Talitha, kum» (hau da: «Neskatila, zeuri dinotsut, jagi»).

Behingoan zutundu eta ibiltzen hasi zan, hamabi urte bazituan-eta. Jente guztia harri eta zur gelditu zan. Jesusek zorrotz agindu eutsen inork be ez egiala jakin. Eta neskatilari jaten emoteko esan eutsen.

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XIII. DOMEKA
## C urtean

## I. IRAKURGAIA

*Eliseok, jagi eta Eliasi jarraitu eutson.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 19, 16b. 19-21

Egun hareetan, Jaunak esan eutson Eliasi: «Igurtzi egizu Eliseo, Xafaten semea, Abel-Meholakoa, zeure ondorengo profeta».

Joan zan Elias menditik, eta Eliseo, Xafaten semea, aurkitu eban goldean; hamabi idi-pare ebazan aurrean, berak hamabigarrena eroiala. Ondotik igarotzean, Eliasek bere soingainekoa bota eutson gainera. Eliseo, orduan, idiak itzirik, Eliasen atzetik joan zan arineketan eta esan eutson: «Itzi egidazu, arren, aitari eta amari agur esaten, eta jarraituko deutsut gero». Eliasek esan eutson: «Zoaz, baina bihurtu. Badakizu zer egin deutsudan».

Joan zan Eliseo, idi-parea hartu eta oparitzat hil eban; buztarriaz su egin, haragia erre eta jaten emon eutson jenteari. Gero jagi eta Eliasi jarraitu eutson, haren zerbitzura jarriz.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 16 [15], 1-2a eta 5. 7-8. 9-10. 11 (R/. ik. 5a)

R/. **Zeu zara, Jauna, nire ondarea.**

V/. Gorde nagizu, Jainko,
Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsat Jaunari: «Zeu zaitut neure jaube».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure edontzia,
zure esku dago nire zoria. R/.

V/. Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deust-eta emoten,
gauez be berak dau nire barrua hezten.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.

V/. Horregaitik, alai dot bihotza, pozik erraiak,
atsedenean nasai gorputza.
Ez dozu-eta nire bizia Herio-lezara jaurtiko,
ezta be zeure fededuna hilobian galtzen itziko. R/.

V/. Bizirako bidea erakutsiko deustazu;
alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,
zorionez betiko zeure ondoan. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Askatasunera dei egin deutsue Jainkoak.*

San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako epistolatik

*Ga* 5, 1. 13-18

Senideok: Libre izateko askatu gaitu Kristok; iraun egizue, beraz, sendo eta ez makurtu barriro esklabotzaren buztarpera.

Zuei, senideoi, askatasunera dei egin deutsue Jainkoak; baina ez bekizue askatasun hori atxakia izan grina txarren arabera bizitzeko; bestela baino, egin zagiezala maitasunak alkarren zerbitzari. Izan be lege osoa betetzen da-eta agindu bakar hau bete ezkero: «Maitatu egizu zeure lagun hurkoa zeure burua lez». Baina alkarri haginka eta alkar iruntsi beharrean bazabiltze, alkar hondatuko dozue azkenean.

Hauxe dinotsuet: Bizi zaiteze Espirituari dagokionez, eta ez grina txarrei jarraituz. Giza grinak Espirituaren aurkakoak dira, eta Espiritua giza grinen aurkakoa. Indar bi horreek alkarren aurka dabiltz; holan,

ez dozue nahi zeunkiena egiten. Espirituak gidatzen bazaitue, ostera, ez zagoze legearen menpe.
Jaunak esana.

## Aleluia

*1 Sm* 3, 9; Jn 6, 68c

R/. **Aleluia.**
V/. Egin berba, Jauna; zure morroi hau zuhur dago;
zure hitzek betiko bizia dabe. R/.

## EBANJELIOA

*Jerusalemera joateko erabagia hartu eban.*
*Edonora jarraituko deutsut.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 9, 51-62

Jesusek, mundu honetatik eroana izateko sasoia etorkiola, Jerusalemera joateko erabagia hartu eban. Mandatariak bialdu zituan aurretik, eta Samariako herri baten sartu ziran, Jesusi ostatua prestatzera. Baina herrikoek ez eben hartu gura izan, Jerusalemera joialako.

Hori ikusirik, Santiago eta Joan ikasleek esan eutsoen: «Jauna, aginduko dogu zerutik sua jatsi eta

kiskaldu dagizala?» Baina Jesusek, hareekana bihurturik, agiraka egin eutsen. Gero beste herri batera joan ziran.

Bidean joiazala, batek esan eutson Jesusi: «Edonora jarraituko deutsut». Jesusek erantzun eutson: «Lukiek baditue zuloak eta zeruko hegaztiek habiak; Gizonaren Semeak, ostera, ez dauka burua non ezarririk».

Beste bati esan eutson: «Jarraitu Niri». Baina harek erantzun: «Jauna, itzi eidazu lehenago neure aitari lur emotera joaten». Jesusek erantzun eutson: «Itzi hildakoei euren hildakoei lur emoten; zu zoaz Jainkoaren erreinua iragartzera».

Beste batek, barriz, esan eutson: «Jarraituko deutsut, Jauna, baina itzi eidazu lehenago etxekoei agur egiten». Jesusek erantzun eutson: «Goldeari heldu eta atzera begiratzen dauana ez da gai Jainkoaren erreinurako».

Jaunak esana.